# Urria -Kronika-

Nagore Mujikaren atxiloketarekin hasi ginen urria, urteko hamargarren hilabetea. Atxiloketa erarik krudelenean gauzatu zuten, Nagore bere sei urteko alabarekin Villenan, Euskal Herritik 700 bat kilometrotara zegoenean bertan espetxeratua dagoen bikotekidearekin aurrez aurrekoa izan ostean. Larunbat batean atxilotu zuten gainera, agindua, asteartetik bidalita egon arren. Epailearen aurretik astelehenean igaro ostean, espetxeratu egin zuen. Espetxeratu eta lau egunetara berriz, askatu egin zuten. Findantzarik gabe. Etxeratetik ez dugu orainidk ulertzen zein zen Nagore horrela atxilotzeko beharra bizitza erabat normala egiten zuenean; deklaratzeko zitazioa bidaltzeko aukera zutenean.

Larriki eri dauden euskal preso politikoekiko krudelkeria ere erabatekoa da. Larriki gaixo dauden pertsonak dira, etxean egoteko eskubidea duten pertsonak eta, hala ere, frantziar zein espainiar estatuek espetxean mantentzen dituzte. Espetxean  euren gaitzak okerrera besterik egiten ez dutenean. Aske egon beharko zirenean. Espainiak, Ibon Iparragirre espetxean mantentzearen alde egin du HIESA C estadioan eta buruko gaitz larriak dituenean. Eta Frantziak ere, esklerosi anizkoitza dien Ibon Fernandez Iradi espetxean mantenduko du; martxora bitartean, gutxienez. Noiz arte? Non daude euren Giza Eskubideak?

Urrian ere, komunikabideek Espainiako eta Frantziako Gobernuek frantzian espetxeratuak dauden euskal presoak espainiaratzeko legedia martxan jartzen ari direla filtratu zuten. Giza Eskubideen alorrean aurrerapausu moduan aurkeztu bazen ere, espainiako gobernuak dispertsioa aplikatzen jarraitzen duen bitartean, neurria euskal presoen egoera okertu besterik ez dezakeela egin azpimarratu nahi dugun elkartetik.

GIC edo Nazioarteko Harremanetarako Taldeak Euskal Herrira bisita egin du. Hegoaldean hainbat bilkura egin zituen baina, aldi berean, Iparraldeko indar politikoekin bilkura egin zuen eta, Frantziako Gobernuari dokumentua helarazi zioten guztiek. Neurri oso konkretuak mahaigaineratu dizkiote Hollanderen gobernuari. Neurri hori guztiak Euskal Herriak eskatu, nahi eta behar duen konponbideari heltzeko.

# Dispertsioa

## 469 euskal preso politikoak

- **463 euskal preso politiko 76 espetxetan sakabanatuta**
  - **360** euskal preso politiko espainiar estatuko **44** espetxetan sakabanatuta
  - **97** euskal preso politiko frantziar estatuko **28** espetxetan sakabanatuta
  - **3** euskal preso politiko Euskal Herriko **3** espetxetan
  - Euskal preso politiko 1 Ingalaterran
  - Euskal preso politiko 1Portugalen
  - Euskal preso politiko 1 Alemanian
- **6 euskal preso politiko gaixo larri espetxe arinduan**

- **65** euskal preso politiko Euskal Herriatik **1.100-1.000** Kmtara dauden espetxeetan
- **125** euskal preso politiko Euskal Herriatik **990 - 800** Kmtara dauden espetxeetan
- **170** euskal preso politiko Euskal Herriatik **790 - 500** Kmtara dauden espetxeetan
- **31** euskal preso politiko Euskal Herriatik **490 - 400** Kmtara dauden espetxeetan
- **68** euskal preso politiko Euskal Herriatik **400** km bainan gutxigora espetxeratuak

i Adin txikiko **8** ume, 3 urte beherakoak , haien amekin Euskal Herritik **500 eta 540** kmtara dauden bi espetxetan




Eguneratua / Actualizado / Actualisé: 2014-10-31

## Destino aldaketa:

**Alberdi Uranga Itziar** (Durango) Soto del Realetik, Estremerara

**Maiezkurrena Urkizu, Juan Mari** (Hernani) Martutenetik, Palentziara

**Gurrutxaga Gogorza, Oroitz** (Orereta) Meaux Chauconinetik, Villepintera

**Uriarte Lopez de Vicuña, Igor** (Gasteiz) Meaux Chauconinetik, Villepintera

**Arkauz Zubillaga, Kepa** (Arrasate) Villepintetik, Meaux Chauconinera

**Etxeberria Caballero, Beatriz** (Bilbo) Cordobatik, Jaenera

**Aspiazu Rubina, Garikoitz** (Bilbo) Arlesetik, Soto del Realera espainaratua

**Aldasoro Magunzelaia, Ramon** (Antzuola) Castello I-etik , Murcia II-ra

## Askatasunak:

**Dieguez Lopez, Juan Pablo** (Bermeo) Urriaren 8an, espetxe arinduan zegoen.

**Mujika Alvarez, Nagore** (Bilbo) Soto del realetik atera zen urriaren 23an, urriaren 18an Villenan atxilotua izan ondoren.

**Arrieta Perez de Mendiola, Ismael** (Sarria) El Duesotik atera zen zigorra betea 24an

**Garcia Mijangos, Jose** (Bilbo) Ocaña I-etik atera zen zigorra beteta urriak 27an

**Salinas Ijurko, Imanol** (Iruñea) Soto del Realetik atera zen urriaren 31an

**Tobar Eguzkitza, Irati** (Portugalete) Soto del Realeteki atera zen urriaren 31an

**Arina Etxarte, Xabier** (Burlata) Soto del Realetik atera zen urriaren 31an

**Ramirez Cruz, Jazint** (Donostia) Soto del Realetik atera zen urriaren 31an

**Robles, Mtnz del Campo, Igarki** (Gasteiz) Soto del Realetik atera zen urriaren 31an.

## Espetxeratzeak:

**Mujika Alvarez, Nagore** (Bilbo) Villenan atxilotu zuten urriaren 18an. Soto del Realen espetxeratua, urriaren 23an askatasunean atera zen

**Elgorriaga Kunze,Tomás** (Hondarribia) Urriaren 31an Mannheimen (Alemania) atxilotua ta bertan espetxeratua

# Osasun eskubidea

## Larriki eri dagoen Joxe Migel Etxeandia preso politikoak psikologoarekin zuen terapia saioa galdu du

**Instituciones Penitenciarias-ek bazterrak nahasten ari dela salatu du Etxerat elkarteak Etxeandiarena ez baita kasu bakarra izan non psikologoaren lana trabatua izan den azken urte honetan**

Bi hilabetero legez, Jose Miguel Etxeandiak eta bere psikologoak elkarrekin saio terapeutiko bat burutzeko eskaria egin zuten hiru asteko aurrerapenarekin. Saioa, irailaren 22an, astelehena, goizeko 9:30etan egin behar zuten Topaseko espetxean, Salamancan.

Prozedura hau bi hilabetero errepikatzen da, baina, irailean, hilaren 19 an Etxeandiari, Madriletik notifikazio bat ailegatu zitzaion zeinetan "terapia saioa burutzeko baimena tramitazio prozesuan" zegoela azaltzen zen. Lehen aldia zen presoak tankera honetako idatzi bat jasotzen zuela eta, larriki gaixo dagoen presoak, familia informatu zuen, eta honek psikologoa. Psikologoari ez zioten, ostera, inongo notifikaziorik bidali Instituciones Penitenciarias-etik.

Igandean, hilaren 21 ean, Etxeandia bisitatzera joan zen pertsonak baieztatzen du zer den orri horretan ipintzen duena. Etxeandia ordura arte espetxezainei egunero galdeza ibili da eta, erantzun diotena "si no hay otro tipo de respuesta, esto es lo que hay" izan da.Hori dela eta, psikologoak bidaia erdian, kontraesanak kontraesan, atzera, Euskal Herrira, bueltatzea erabaki zuen afera guztia konpondu bitartean.



Hilaren 22an, goizeko 9tatik 12 ak arte espetxearekin mintzatzen jarduten du psikologoak -8 pertsona ezberdinekin solastu behar izan du-. Azkenekoak, "segurtasun" taldeko kide batek, bisita onartua dagoela jakinarazten dio eta, presoari 19an komunikatu zitzaiola idatziz. Ez hori bakarrik, gainera, psikologoari leporatzen diote bisitara agertu ez izana baita "burutzen dituzten prozedimenduen efikazia zalantzan jarri izana" ere.

Eguerdi partera Etxeandiaren arrebak anaiarekin mintzatu ostean jakinarazten dio psikologoari, 13:00ak inguru funtzionario

bat hurbildu zaiola anaiari fotokopia bat eskua zuela; bere psikologoarekin bisita baimendua zuela ipintzen zuen; data: hilaren 19koa zen.

Etxeratek, euskal preso politikoek pairatzen duten eskubideen urraketa sistematikoa salatu nahi du berriz ere. Jose Miguel Etxeandia kalean beharko luke, gaixorik dagoela; kalean egoteko eskubidea duelako hain zuzen. Egoera, ostera, zitala da. Dispertsio politika aplikatu, Euskal Herritik 400 kilometrotara bidali eta, gainera, osasun eskubidea, psikologoarekin terapia egiteko eskubidea urratu diote.

Azkenaldian, errepikatzen ari den egoera da hau, gainera. Presoei, psikologoarekin egoteko eskubidea oztopatzen saiatzen ari dira, sarritan. Lazgarriak diren egoerak are gehiago okertuz. Noiz arte? Noiz arte jarraituko du giza eskubideen urraketa sistematikoak?

# Ibon Iparragirre: Epaiaren irakurketa

**Ibon Iparragirre Burgoa larriki eri dauden Ondarruko presoa da. 2010 urtean atxilotu zuen Ertzaintzak bere herrian eta espetxeratu egin zuten. 2011 urtean, bere osasun egoera zela eta, Basauriko espetxeko Tratamendu Juntak 100.2aren aplikazioa proposatu eta Ibon etxera bidali zuten; bere osasuna eta espetxea ezin bateragarriak zirelako. Segurtasun neurri zorrotzak ezarri arren, Ibon etxean egon da 21014ko martxoaren 7a bitartean; bere aurkako sententzia irmoa bilakatzean. 2. sekzioak bere aurkako bilatze eta atxilotze agindua ematen du. Bere osasun egoerak hobera egin ez arren; espetxeratu izan zen. 2014ko Irailaren 29an Zaintza Epaitegi Zentralak Iboni ukatu egiten dio 100.2 erregima ezartzea, ustez ez dituelako betetzen erregimen flexibleago bat izateko baldintza. Larriki gaixo egon arren. Araudi penitentziarioak eskatzen duen bariable bakarra pertsona batek duen gaixotasuna oso larria eta sendaezina izatea denean. Horren aurrean, Etxeratek, balorazio hau argitaratu du:**

Larriki gaixo dauden 10 euskal preso politikoen egoera oso grabea eta, egunero, okerrera egiten du. Espainia eta Frantziako gobernuek mina eta samina zabaltzen jarraitzen dute; mesede politiko eta elektoralak lortzeko, sufrimendua sortzen. Espetxean mantentzen dituzte 10 euskal preso politiko hauek, jakinda euren gaixotasunak espetxean okerrera egingo dutela. Ez hori bakarrik; gaixo egonda ere, neurririk krudelenak aplikatzen dizkiete. Ehundaka kilometroetara dispertsatu, bakartu, isolatu edota euren gaitzek okerrera ez egiteko behar dituzten tratamenduak ukatu edo zailtzen. Erabaki politiko bat dago honen guztiaren atzean. Mina eta samina luzatzeko erabaki politikoa hain zuzen.

Espetxeratze arindua ukatu diote larriki gaixorik dagoen Ibon Iparragirre

euskal preso politikoari. Espetxeratze arindua ukatu, 2011 urtean espetxe arindua onartu zutenean. Bere osasunak halabeharrezkoa duelako; espetxeak ez dituelako betetzen ez higiniekoki ez psikoki Ibonen osasunak dituen beharrak. Ibon LARRIKI GAIXO DAGO; IBONEK ASKE BEHAR LUKE. Kalean. Eta kalera bidali beharrean, heriotz zigorrera kondenatu dute.

Argi dago presoak ez kaleratzeko erabakia erabat politikoa dela eta, euren eskubideak edo osasun egoera ez direla kontutan hartzen.

Hiru preso politiko hil dira urte bakar batean. Beste 10k pronostiko latzak dituzte baina euskal preso politikoentzako ez dago Vera, Rodriguez Galindo eta Barrionuevo bezalakoek izan dituzten askatasun humanitarioak.

Sufrimendua luzatzen ari dira. Giza Eskubideen etengabeko urraketa areagotzen ari dira. Hauxe da, urjentziarekin ebatzi beharreko arazoa.

**EGUNGO OSASUN EGOERA:** Nola dago Ibon Iparragirre?

Medikuen iritzia

Ibon Iparragirreren osasun egungo egoera eta txosten medikuak aztertu ondoren, mediku aldetik honako ondorioetara iritsi gara:

1. Ibon Iparragirrek IHES gaitza du, 3 C estadiokoa. Beraz, gaixotasun honen estadio aurreratu batean gaude, oso larri eta sendaezina dena. Baina arazoa ez da bakarrik IHESarena: gaitz horrek neurologikoki ere eragiten dio, larriki gainera, arlo kognitiboa ukitzen duelarik. Izan ere, leukopatia eragiten dion ondorio neurologikoak ditu, gaitzak berak eragina, krisi konbultsiboak eta IHESaren dementzia koadro bat sortuz. Eragin horren ondorioz, psikosi motako jarrera oldarkorraren nahasmena nagusitu da berarengan, bere baitako errealitatearen interpretazio eta fabulazio paranoikoek bere inguruarekiko harremanetan gatazken arriskua areagotuz. Nahasmen mota honek okerrera egiteko arrisku erreala du, eta honen interpetazio okerrak neurri okerrak hartzea eragin dezake: bakartze erregimenean ezartzea, adibidez. Beraz, gaitz inmunologikoa oso larria izanik ere, afekzio neurologikoaren ondorioak ere oso larriak dira, egoera, giro eta inguru horretan jarraituz gero.

2. Bere osasun egoera horrela izanik ere, espetxeko erizaindegian bakartua dute Ibon. Egoera horretan bere inguru hurbileneko pertsonengandik bakartua egoteak ez dio batere laguntzen. Nahasmenaren ondorioz inguruarekin duen harreman gatazkatsuak sortzen duen arriskua kontuan izanik, larrialdi une batean bakartua egoteak arazoa eta arriskua areagotu baino ez du egiten.

3. Gaixotasunaren ondorioz, gainera, ikusmen arazoak ditu Ibonek. Orain arte, baina, ez du tratamendu gokirik jaso eta ezin du ikusmen ariketarik egin.

4. Eta, gainera, gaixotasun mota honek inguru afektibo eta familiarraren beharra eskatzen du. Horregatik, besteak beste, ezarri zuten espetxeratze arinduaren erregimenean orain dela hiru urte eta, gure ustez, inguru horretatik urrun egoteak kaltea baino ez dio eragiten bere osasun integralean.

Gauzak horrela, eta laburbilduz, Ibon Iparragirre bizitza arrisku erreala duen paziente bat dela deritzogu. Une honetan, pairatzen duen gaitzaren larritasuna kontuan harturik, dagoen lekuan egonik eta inguruarekiko garatu duen nahasmena haintzakotzat harturik, bere inguru afektibo zein familiarrean egoteak bakarrik arindu dezake gaixotasunaren zama.

## Ibon Fernandez Iradi

**Etxerat elkarteak, Ni Ere Banoa ekimeneko eragile guztiekin batera, prentsa oharra kaleratu zuen larriki eri dagoen Ibon Fernandez Iradi preso lasartearraren epaia jakin eta ordu batzuetara. Eragile guztiek adostutako testua izan da beraz.**

Dei auziaren emaitza jakin da gaur. Ibon Fernández preso mantentzearen aldekoa da. Dei auzitegiak ez du suspentsioa eskaerari erantzun izan nahi gaur eskatuz 3. azterketa mediko bat. Modu honetan behartzen dute Ibon preso egoitea 5 hilabete gehiago auzia emanez 2015-eko martxoaren 28an, jakin gabe askatuko duten. Argiki erran dezagun, erabakia zinikoa eta onartezina da!

Oroitaraz dezagun zein den Ibonen egoera. Larriki eri diren 10 euskal preso politikoetarik bat da. Esklerosi anizkoitza bat du eta ezin dio eritasunari behar den bezala aurre egin, ez bada askatua. Bi mediku eadituen konklusionea zen alta auzitegiak hirugarren azterketa bat galdegiten du, jakinez bi urte pasa direla eskaera egin zenetik.




Ez gaitezen tronpa. Ibon preso atxikitzea erabaki politikoa da.

Beste behin, frantziar gobernuak espainiar gobernua segitzen du, bake prozesuaren aldeko urrats ttikiena ere egitea ukatuz. Ibilmolde horrek, Ibonen kondenaren etetea ukatzera darama, nahiz eta oinarrizko giza exijentzia izan. Ibilmolde hori gainera, Euskal Herriaren

eskaera masiboaren kontra doa: Frantziar estatua –espainiarra bezala– bake prozesuan engaiatu behar da, duela hiru urte Aieteko konferentziarekin eta ETAk armak uztea iragartzearekin sortu den egoera berri hontan eztabaida bultzatu behar du.

Joan den ekainean « Giza eskubideak – Konponbidea – Bakea » banderolaren gibelean ibili diren 8 000 manifestariek, eztabaida bultza dezan, legeri bereziekin buka dezan eta preso eta iheslarien eskubideak errespeta ditzan eskatzen diote frantziar gobernuari.

Eta nola ez aipa joan den ostiralean Aieten egondakoek izenpetutako adierazpena. Adierazpen honekin kontsensus argi bat publiko egin da. Momentu biziki inportantean da bake prozesuarentzat, eta biziki positiboki baloratzen dugu.

Ez dugu Ibon Fernandez Iradi preso atxikitzea onartzen. Preso dirauen egun bakoitza, eritasunaren kontra baldintza egokietan borrokatu ezin duen egun bat gehiago da ! Preso atxikia den egun bakoitza egun bat gehiegi da !

Mobilizatzen segituko dugu, Ibonentzat eta beste preso guzientzat !

Ibon askatu !



# Senide eta lagunak

## Nagore Mujika senidearen atxiloketaren harira

**Guardia Zibilak, urriaren 18an, Nagore Mujika senidea atxilotu zuen. Euskal Herritik urrun, dispertsioaren pean, Villenako espetxean zenean, bere sei urteko alabaren aurrean Larunbat batean atxilotu zuten agindua asteartetik izan arren. Ez hori bakarrik, igandean epaitegia itxita zegoen. Astelehenean espetxeratu zuten. Ostegunean, inongo frogarik ez zegoenez, aske utzi zuten. Senideen aurkako erasorik EZ!**

Guardia Zibilak Nagore Mujika, euskal preso politiko baten senidea atxilotu du, bere sei urteko alabarekin Euskal Herritik 700 bat kilometrotara zegoenean.

Senideei zuzendutako beste eraso bat da hau, dispertsioak ereindako babesgabetasunaren lurzoruan izateko aukera duen erasoa hain zuzen ere. Bereziki larria da gainera adin txikiko bat, bere alaba, hau dena bizitzera behartu izan dutenean. Ume honen eskubideak ez al dira beste edozein umerenak bezain errespetagarriak?

Dispertsioak eraman ditu Alacanteraino Nagore eta bere alaba egun osoko bidaian, eta justifika ezina da epaile baten zitazioaren izenean pertsona bat atxilotzea, epailaren aurrean aurkezteko komunikatzearekin nahikoa zenean. Are gehiago komunikabideetan zabaldu bezala duela 22 urteko zerbaiten harira omen denean. Asteburuan izateak gainera egun bi komisaldian pasatzera behartzen du, erabat zentzugabea ez bada sufrimendua hareagotzearen logikatik aplikatzen dela.

Alacanten, etxetik urrun, umea hau guztia bizitzera behartuz erabat ekidingarria zenean. Zer bilatzen ari dira senideen kontrako indar gehiegikeria guzti honekin? Noiz bukatuko da eskubide guzti hauek bideragarri egiten dituen dispertsio politika?

Etxerat elkartetik senideen kontrako jazarpena berehalakoan bukatzea exijitzen dugu. Ikuskizun neurrigabe eta krudela izan da hau; zentzugabekeria itzela.

Horregatik guztiagatik, Etxerat elkarteak, erabateko babesa eta elkartasuna eskaini nahi die Nagoreren senide eta lagunei.

# Lau aurrez aurreko galdu dira Soto del Real espetxean senideen kontrako katxeo umilagarriak egin nahi izateagatik



Iragan urriaren 10, 11 eta 12an, Soto del Real espetxean ezohiko eta intimitate eskubidearen aurkako katxeo umilagarriak egiten saiatu ziren bertako funtzionarioek. Inongo arrazoirik argudiatu gabe, bertan espetxeratuak dauden euskal preso politikoen senide eta lagunek katxeo saiakerak pairatu zituzten. Senideek, katxeo umilagarri hauek pairatzera uko egin zioten eta, horren ondorioz, lau aurrez aurreko galdu egin ziren. Lau aurrez aurreko galdu, espetxeraino 450 bat kilometroko bidaia egin ostean.

Senideek, funtzionarioei, jasotako errekerimenduaren kopiagatik galdegin bazieten ere, hauek ez zizkieten eman. Funtzionariek bi arrazoi aipatu zitutzen:

Goitik zetorren agindua zela

Agindu aleatorioa zela. Bigarren hau gezurra dela argi geratzen da euskal preso politikoen senideen aurkako neurria izan zelako.

Egoera honen aurrean, Etxerat elkarteak, normatibak 48.7 puntuan dioena gogora ekarri nahi du, katxeo eta komunikazioei dagokionean:

*"Aurreikusitako komuniakzioetan, komunikazioan dauden bisitarien intimitate ahal bezain beste bermatuko da.* ***Biluzketa osoak, soilik 68 artikuluak dionaren arabera egingo dira, hau da, arrazoiak behar bezala argudiatuta daudenean****. Bisitariak biluzketari uko egingo balio, bisita bertan behera geratuko da"*

# Urriko elkartruke eta esperientzia ezberdinak




Askotariko iharduerak aurrera eraman eta beste hainbatetan parte hartzeko aukera izan dugu hilabete honetan zehar. Udaran urteko lehen Sei Hilabeteetako balantzea publikoki aurkeztu genuen, eragile, alderdi eta instituzioei helarazteko konpromezua hartu ere. Urrian zehar lan horrekin jarraitu dugu, hainbat alderdi zein talde parlamentario, eragile eta instituzio zein karguekin elkarbanatu duguarik, horrekin batera eskubideen urraketa horiekin bukatzeko euren alea jartzeko eskaera luzatuz.

Kanpo harreman horiek garatzearekin batera, barne mailako komunikazio espazioak ireki eta senide izateak ekartzen dituen ondorio ezberdin eta askotarikoen inguruan hausnartzeko aukera izan dugu talde dinamikatik abiatutako tailerretan. Honako tailerrak Araba, Iparraldean eta Gipuzkoan burutu genituen uda hasieran, Bizkaian eta Nafarroan garatu ditugu urrian zehar.

Urriaren 13an Donostiako Bakearen etxean "Egia eta Oroimena adiskidetze prozesuetan: nazioarteko esperientziak eta euskal kasuaren erronkak" jardunaldietan parte hartu izan genuen hainbat eragile eta nazioarteko kideekin batera.

Iraganaren tratamenduaz hitz egitearen beharrezkotasunaz aritu ziren; egi publikoaren eraikuntzaz eta bide horretan memoria aktibo baten paperaz, gogoratzeaz gain ekiten duen memoria bat, gauzak aldatzen dituena hain zuzen ere. Gertatu izan dena eta gertatzen ari dena dokumentatzeak duen garrantziaz eta egiaren norabidean sujeto sozialen bultzadaren ezinbestekotasunaz ere mintzatu ziren. Zer gertatu den eta zergatik gertatu den heldu beharreko zerbait dela norabide horretan; prozesu luzeak azken batean, baina bakeruntz ibili nahi duen jendarte batek ibili beharrekoak.

Beste herrialde batzuetako esperientziak ezagutzeko aukera izan genuen: Txileko Valech Batzordearen berri izateko eta nola berau sortzeko preso politiko ohien elkarteen bultzada ezinbestekoa izan zen; Kolombiako Emakumeen Egiaren Batzordearen berri ere eman ziguten eta emakumeak memoriaren babesle eta bultzatzaile gisa duten paperaz aritu; estatu mailako hobitik ateratzeak mintzagai izan zen eta ardura judizialen erabateko linboa. Ikuspegi juridikoa ere mahaigaineratu zen, zigor bideak dituen mugapen eta ezintasunak egi kolektibo edo historiko bat eraikitzearen bidean, euskal herritarrei aplikatzen zaien "Etsairen



Zigor zuzenbideaz" ere aritu ziren. Audientzia Nazionaleko epaile bati espainiar jendartearen lehen interesa zuzenbide estatua berrezartzea dela esaten entzun genion, legeri anterroristaren bitartez kolpatua izan dena, eta nola horrek espetxe tratamendu ezberdindu eta zorrotzago bat aplikatzea ekartzen duen; senideok gertutik ezagutzen dugun zerbait, baina interesgarria dena beste batzuen ahotan entzutea.

Hurrengo egunean Txileko esperientzia gertugotik ezagutzeko aukera izan genuen Elisabeth Lirarekin elkarrizketan, giza eskubideen urraketen biktimak jasotzen zituen Valech Batzordeko kidearekin, eta Euskal Herrian egiaren bidean ibiltzeko topatzen ditugun traba eta zailtasunetaz aritu ginen.

Hilabetea bukatzeko mapan hurbilago dugun Irlandako prozesua gertugotik ezagutzeko aukera izan genuen Peace Program-eko kide diren bi preso ohien eskutik: Michael Culbert preso ohi errepublikarra eta Colin Halliday preso-ohi unionista. Irlandako bake prozesuan preso ohiek duten paper garrantzitsuaz aritu ginen. Guk, senideok bizi behar izaten dugunaren berri eman genien, eta egungo salbuespenezko espetxe politikak errotik urratzen dituen eskubideetaz. Gure senideek balizko bake prozesu batean sujeto aktibo izateko dituzten oztopo eta debekuetaz ere aritu ginen. Erabat ados agertu ziren egoeraren larritasunarekin eta presoei zuzendutako edozein programa, beraien adostasuna izatearen beharra azpimarratu zuten. Eurek ezer gutxi espero zuten momentuan egoerak eta prozesuak aurrera egin zuela trasmititu ziguten, itxaropenerako eta lanerako atea irekia utzi nahi izan ziguten beraz. Ostiralero senideek autobusaren irteerarekin batera egiten den Bilboko kontzentrazioan parte hartu zuten bi preso ohiek.

Eta nazioarteko adituen eskutik, Brian Currin-en ahotik hain zuzen ere, presoen eremurako gomendioak entzun genituen hilabeteko azken egunetan. Gomendio hauek udararen aurretik burutu ziren eta parte hartu genuen Foro Sozialetik ondorioztatzen dira. Argiak dira gomendioak, eta eskubideen errespetua baldintzen menpe egotearen ezinezkotasuna horietako bat da, senideok aspaldi diogun zerbait hain zuzen ere, baita dispertsioaren amaieraren beharra. Gure senideek agertu bezala, prozesuarekiko konpromezua eta eragindako minaren aitortza ere jasotzen zituzten honako gomendioek. Askotariko esperientzia aberasgarriak urrian zehar beraz!



# Ekimenak

## Jon Enparantza: 10 hilabete isolamenduan!

Antiguako abokatua urtarriletik darama isolamendua. Modulu huts batean daukate, bera bakarrik. Ez du inoren ahotsik entzuten eta, soilik, funtzionarioekin dauka kontaktua. Ez hori bakarrik, duela lau hilabete ikusi zuen, azkenekoz, Enparantzak, eguzkia. Egunean bi aldiz du patiora irteteko aukera. Txikia da patioa, horma handiekin, eta, hara ateratzen den garaiagatik ez ezik, paretek eguzkia ikustea eragozten diote. Bi espetxeetan egon da Enparantza, espetxeratu zutenetik, isolamendu egoerarik basati eta krudelenean: Segovian aurrena eta Navalcarneron orain.




Krudelkeria ez da hor amaitzen: senideen eta lagunen bisitak astegunez ditu. Ondorioz, bisitariek eskola edota lanorduak galtzen dituzte. Bost seme – alaba ditu Jon Enparantzak eta, familia osoak ezin du aita bisitatu aldi berean, lagun gehiegi omen direlako bis batean sartzeko. Topea hiru haur dira. Hau da, ezin izan dute inoiz familia osoa elkartu.

Egoera salatzeko, Antigua auzoko bizilagun eta eragileek, prentsaurrekoa antolatu zuten.

## Fernández Diaz Ministroa




Iragan urriaren 20an, Jorge Fernández Diaz Espainiako Barne Ministroa Gasteiza etorri zen, Terrorismoaren Biktimak omenduko dituen Memorialaren proiektua sinatu eta aurkeztera. Presoen senide eta lagunon mina, samina, eta hildako zein zauritutakoak ez ditu aitortzen zentro horrek. Ez eta gatazkak eragindako beste biktimak. Guri, preso eta iheslari politikoen senideoi, izugarrizko errespetu falta zein probokazioa iruditzen zaigu ministro honek eta zentroak berak gatazka honek sortutako biktima guztiak ez aitortzea. Etxeratek kontzentrazioa burutu zuen.

# Mirentxinek 15 URTE!!

## #MilaEskerMirentxin



Mirentxin, gidarien elkartasun ekimenak 15 urte bete ditu urrian.

Hori dela eta, Berria egunkariak eta Zazpika aldizkariak erreportai hunkigarriak argitaratu dituzte. Irakurri ez dituztenentzat; linkak... hemen!

**15 urte distantziak txikitzen.**

http://www.berria.eus/paperekoa/1812/008/001/2014-10-11/15_urte_distantziak_txikitzen.htm

**Trasnportes Mirentxin, tantas historias como Kilometros:**

http://www.naiz.eus/eu/actualidad/noticia/20141028/mirentxin-transportes-solidarios



## EUSKAL HERRIA: 3

**BASAURI**
1.Gogorza Otaegi, Aitzol

**MARTUTENE**
2.Codo Callejo, Jagoba

**ZABALLA**
3.Martin Hernando, Txus

## ESPAINIAR ESTATUA / ESTADO ESPAÑOL / ÉTAT ESPAGNOL: 360

**A LAMA (Pontevedra) - 730 km**

1.Alonso Abad, Fernando
2.Arizkuren Ruiz, Jose
3.Bravo Maestrojuan, Josu
4.Herrera Vieites, Aitor
5.Ijurko Iroz, Hodei
6.Makazaga Azurmendi, Xabier
7.Marin Mercero, Iñaki
8.Martinez Ahedo, Gorka
9.Nieto Torio, Ruben
10.Olarra Agiriano, Joxe Mari
11.S Sebastian Gaztelumendi, Mikel
12.Berriozabal Bernas, Inma
13.Martinez Garcia, Idoia

**ALCALA MECO - 450 km**

14.Campo Barandiaran, Jose Luis
15.Goieaskoetxea Arronategi, Eneko
16.Uranga Artola, Kemen

**ALGECIRAS - 1.100 km**

17.Aginaga Ginea, Ibai
18.Albisu Hernandez, Iñigo
19.Arrieta Llopis, Mikel
20.Benaito Villagarcia, Mi Angel
21.Cristobal Martinez, Carlos
22.Fano Aldasoro, Unai
23.Garcia Sertutxa, Gorka
24.Gaztelu Otxandorena, J. Miguel
25.Loran Lafourcade, Gorka
26.Preciado Izarra, Jon Kepa
27.Sola Campillo, Aurken
28.Urizar de Paz, German
29.Egues Gurrutxaga, Ana Belen
30.Etxeberria Simarro, Leire

**ALMERIA - 1.000 km**

31.Arregi Imaz, Xabier
32.Arronategi Azurmendi, Kepa
33.Arruarte Santacruz, Garikoitz
34.Del Olmo Vega, Fernando
35.Ginea Sagasti, Josu
36.Goñi Lara, Luis
37.Krutxaga Elezkano, Iñaki
38.Viedma Morillas, Alberto
39.Yañez Ortiz de Barron, Iratxe

**ARANJUEZ (MADRID-VI) - 500 km**

40.Almandoz Erbiti, Mikel
41.Aranguren Urroz, Asier
42.Moreno Ramajo, Txabi
43.Garaizar San Martin, Nerea + umea
44.Majarenas Ibarreta, Sara + umea
45.Prieto Furundarena, Anabel + umea
46.Sanz Martin, Olga + umea

**BADAJOZ - 750 km**

47.Del Hoyo Hernandez, Kepa
48.Fraile Iturralde, Gorka
49.Gabiola Goiogana, Andoni
50.Garcia Justo, Asier
51.Gonzalez Sola, Igor
52.Igerategi Lizarribar, Iñaki
53.Orbegozo Etxarri, Mikel
54.Sota Virto, Fernando
55.Ugalde Zubiri, Andoni

**BRIEVA (Avila) - 470 km**

56.Agirre Garcia, Oihana

**BURGOS - 210 km**

57.Arriaga Ibarra, Jesus Felipe
58.Ezkerra Laspeñas, Ekaitz
59.Mendizabal Alberdi, Juan Maria
60.Salutregi Mentxaka, Jabier
61.Urrutia Gonzalez, Oier
62.Zurutuza Sarasola, Jose Antonio

**CACERES II - 650 km**

63.Betolaza Vilagrasa, Gorka
64.Lima Sagarna, Iker
65.Olabarrieta Olabarrieta, J Mª
66.Olaizola Baseta, Aitor
67.Otegi Eraso, Andoni
68.San Argimiro Isasa, Mikel

**CASTELLO I - 590 km**

69.Altable Etxarte, Jesus Mª
70.Cabello Perez, Andoni
71.Cano Hernandez, Pedro Maria
72.Gallastegi Sodupe, Orkatz
73.Larrea Azpiri, Zunbeltz
74.Lauzirika Oribe, Karmelo
75.Lezkano Bernal, Sergio
76.Otxoa de Eribe Landa, J. Angel
77.Zelarain Ortiz, Oskar
78.Igarriz Izeta, Marta

**CASTELLO II –ALBOCASSER - 590 km**

79.Aginako Etxenagusia, Asier
80.Alonso Alvarez, Raul
81.Arri Pascual, Alvaro
82.Etxaniz Garcia, Julen
83.Iragi Gurrutxaga, Harriet
84.Karasatorre Aldaz, Juan Ramon
85.Markes Zelaia, Patxi
86.Perez Zorriketa, Ugaitz

**CORDOBA (Alcolea) - 810 km**

87.Alonso Rubio, Iñaki
88.Calabozo Casado, Oskar
89.Cañas Carton, Iñaki
90.Gallaga Ruiz, Javier
91.Muñoa Arizmendiarrieta, Ibon
92.Perez Aldunate, Xabier
93.Polo Escobes, Sergio
94.Portu Juanena, Igor
95.Solana Matarran, Jon Igor
96.Usandizaga Galarraga, Xabin
97.Vidal Alvaro, Gorka
98.Perez Aristizabal, Eider

**CURTIS (A Coruña) - 650 km**

99.Blanco Santisteban, Zigor
100.Borde Gaztelumendi, Joseba
101.Bravo Saez de Urabain, Zigor
102.Eskudero Balerdi, Gregorio
103.Gomez Ezkerro, Jesus Maria
104.Mariñelarena Garziandia, Luis
105.Murga Zenarruzabeitia, Andoni
106.Plazaola Anduaga, Alberto
107.Prieto Jurado, Sebastian
108.Salaberria Etxebeste, Emilio

**DAROCA - 360 km**

109.Agirre Goñi, Ekaitz
110.Geresta Azurmendi, Ander
111.Gomez Gonzalez, Alberto
112.Olaizola Urien, Aitor

**DUEÑAS (Palencia) - 300 km**

113.Karrera Arenzana, Asier
114.Lorente Aspiazu, Oier
115.Maiezkurrena Urkizu, Juan Mari
116.Maruri Basagoitia, Lander
117.Zalakain Garaikoetxea, Jesus Mari

**EL DUESO - 225 km**

118.Diez Usabiaga, Rafael
119.Vicente Ugalde, Imanol

**ESTREMERA (MADRID VII) - 520 km**

120.Gonzalez Gonzalez, Jon
121.Imaz Munduate, Iñaki
122.Otaño Labaka, Juan Ignacio
123.Alberdi Uranga, Itziar
124.Alkorta Arrizabalaga, Urtza
125.Jacinto Garcia, Sonia

**FONCALENT (Alacant I) - 760 km**

126.Badillo Borde, Irkus
127.Lujanbio Galparsoro, Xabier
128.Madina Etxebarria, Tomas
129.Mujika Zubiarrain, Garikoitz
130.Txokarro Zoko, Jorge
131.Uranga Salbide, Patxi
132.Coello Onaindia, Aitziber
133.Gallastegi Sodupe, Lexuri
134.Lasagabaster Anza, Olatz

**GRANADA (Albolote) - 870 km**

135.Agote Cillero, Arkaitz
136.Aizpuru Giraldo, Eneko
137.Apaolaza Sancho, Iban
138.Barrios Martin, Jose Luis
139.Beaumont Etxebarria, Iñaki
140.Bilbao Solaetxe, Unai
141.Coto Etxeandia, Egoitz
142.Legaz Irureta, Armando
143.Lopez de Okariz, Unai
144.Miner Villanueva, Imanol
145.Olarra Guridi, Juan Antonio
146.Rodriguez Lopez, Asier
147.Ugarte Lpez de Arkaute, Diego
148.Delgado Iriondo, Agurtzane
149.Mujika Goñi, Ainhoa

**HERRERA DE LA MANCHA - 620 km**

150.Aranburu Muguruza, Xabier
151.Aranibar Almandoz, Joseba
152.Armendariz Izagirre, Iñaki
153.Askasibar Garitano, Mikel
154.Balerdi ibarguren, Xabier
155.Erostegi Bidaguren, Joseba
156.Gorostiaga Gonzalez, Pablo
157.Larretxea Mendiola, Joanes
158.Lopez Gomez, Jon
159.Marcos Alvarez, Faustino
160.Ruiz Jaso, Zigor
161.San Epifanio San Pedro, Felipe
162.San Pedro Blanco, Jon Mirena



**HUELVA II - 1.000 km**

163.Arginzoniz Zubiaurre, Aritz
164.Balerdi Iturralde, Juan Carlos
165.Besance Zugasti, Juan Carlos
166.Franco Martinez, Bittor
167.Garcia Gaztelu, Xabier
168.Garcia Jodra, Fernando
169.Lasa Mendiaraz, Sebastian
170.Lopez Anta, Angel
171.Maurtua Eguren, Aitzol
172.Olabarrieta Colorado, Iker
173.Ruiz Romero, Patxi
174.Zelarain Errazti, Julen
175.Bengoa Ziarsolo, Nerea
176.Gallastegi Sodupe,Irantzu
177.Txurruka Madinabeitia, Lurdes

**JAEN II - 780 km**

178.Aginagalde Ugartemendia, Beñat
179.Dominguez Atxalandabaso, Iñaki
180.Fresnedo Gerrikabeitia, Aitor
181.Garcia Aliaga, Aitor
182.Goienetxe Alonso, Iñaki
183.Sanpedro Larrañaga, Premin
184.SarasolaYarzabal, Mattin
185.Zapirain Romano, Iñigo
186.Bakedano Maidagan, Oihane
187.Ernaga Esnoz, Joxepa
188.Etxebarria Caballero, Beatriz

**LOGROÑO - 190 km**

189.Aragon Iroz, Santiago
190.De Ibero Arteaga, Ekaitz
191.Etxaburu Markuerkiaga, Eneko
192.Otegi Mondragon, Arnaldo
193.Rodriguez Torres, Arkaitz
194.Saez de la Cuesta, Alicia

**MANSILLA (Leon) - 360 km**

195.Araguas Jusue, Iker
196.Franco Gonzalez, Aitor
197.Gonzalez Endemaño, Jorge
198.Korta Carrion, Mikel
199.Landaberea Torremotxa, Arkaitz
200.Murga Luzuriaga, Francisco
201.Murga Luzuriaga, Isidro
202.Comes Arranbillet, Olga

**MONTERROSO (Lugo) - 640 km**

203.Aiensa Laborda, Ibai
204.Aiensa Laborda, Mikel
205.Ibarra Izurieta, Bigarren
206.Lejarzegi Olabarrieta,Endika
207.Zubizarreta Balboa, Kepa

**MURCIA I - 830 km**

208.Martinez Arkarazo, Gorka
209.Martinez del Campo, Oier
210.Novoa Arroniz, Jose Mari
211.Ramada Estevez, Fco Jose
212.Segurola Beobide, Joseba

**MURCIA II - 830 km**

213.Aldasoro Magunazelaia,Ramon
214.Andueza Antxia, Oier
215.Arietaleaniz Telleria, Iñaki
216.Arkauz Arana, Josu
217.Atristain Gorosabel, Javier
218.Cadenas Lorente, Oskar
219.Izpura Garcia, Mikel
220.Labeaga Garcia, Urko
221.Sagarzazu Gomez, Kandido
222.Troitiño Ciria, Jon
223.Garcia Montero, Ainoa
224.Mardaras Orueta, Oihana

**NAVALCARNERO - (MADRID IV) - 480 km**

225.Alberdi Casanova, Egoi
226.Iparragirre Burgoa, Ibon
227.Lopez de la Calle Uribarri, Egoitz

**OCAÑA I - 520 km**

228.Esnaola Dorronsoro, Aitor
229.Garcia Arrieta, Garikoitz
230.Gomez Larrañaga, Aratz
231.Herrador Pouso, Juan Carlos
232.Oiartzabal Ubierna, Anartz
233.Otegi Unanue, Mikel

**OCAÑA II - 520 km**

234.Galarraga Godoi, Eneko
235.Gisasola Olaeta, Arnaltz
236.Lopez Gonzalez, Jesus Maria
237.Santesteban Goikoetxea, Iñaki
238.Trenor Dicenta, Karlos

**PUERTO I - 1.050 km**

239.Almaraz Larrañaga, Agustin
240.Atxurra Egurrola, Julen
241.Castro Sarriegi, Alfonso
242.Elejalde Tapia, Fernando
243.Guridi Lasa, Iñigo
244.Gurtubai Sanchez, Sebastian
245.Gutierrez Carrillo, Iñigo
246.Lerin Sanchez, Jose Angel
247.Orbe Sevillano, Zigor
248.Ordoñez Fernandez, Josu
249.Saez Arrieta, Arkaitz
250.Urretabizkaia Saukillo, Jon
251.Zabalo Beitia, Xabier
252.Zubiaurre Agirre, Jon

**PUERTO III - 1.050 km**

253.Agirrebarrena Beldarrain, Aitor
254.Alegria Loinaz, Xabier
255.Barreras Diaz, Oskar
256.Beobide Arza, Ibai
257.Bilbao Goikoetxea, Iñaki
258.Castro Zabaleta, Manex
259.Cotano Sinde, Aitor
260.Dorronsoro Malaxetxebarria, J.M
261.Enbeita Ortuondo, Joseba
262.Etxeberrria Garaikoetxea, J Mari
263.Gramont, David
264.Matanzas Gorostizaga, Jose Mª
265.Parot Navarro, Unai
266.Pastor Alonso, Daniel
267.Rey Urmeneta, Xabier
268.Zulueta Amutxastegi, Arantza

**SEGOVIA - 410 km**

269.Enparantza Agirre, Jon

**SEVILLA II - 910 km**

270.Agirre Bernadal, Iker
271.Agirre Odriozola, Jabi
272.Agirresarobe Pagola, Gurutz
273.Arakama Mendia, Iñaki
274.Arriaga Arruabarrena, Rufino
275.Arzalluz Goñi, Asier
276.Etxabarri Garro, Juan Mª
277.Etxeberria Goikoetxea, Garikoitz
278.Goikoetxea Garralda, Jesus
279.Lebrero Panizo, Roberto
280.Vallejo Franco, Iñigo

**SORIA - 270 km**

281.Arretxe Salbide, Mikel
282.Etxeberria Arbelaitz, Jose Antonio
283.Rodriguez Mallabiarrena, Josu
284.Sagardoi Lana, Xabier

**SOTO DEL REAL (MADRID V) - 410 km**

~~285.Arina Etxarte, Xabier~~
286.Aspiazu Rubina, Garikoitz
287.Fuentes Villota, Raul
288.Lerin Sanchez, Iñaki
289.Narvaez Goñi, Juan Jesus
~~290.Ramirez Cruz, Jazint~~
~~291.Robles Mtnez del Campo, Igarki~~
~~292.Salinas Ijurko, Imanol~~
293.Orkolaga Etxaniz, Aintzane
~~294.Tobar Eguzkitza, Irati~~

**TERUEL - 450 km**

295.Ormazabal Lizeaga, Asier
296.Peña Balantzategi, Ibai

**TOPAS (Salamanca) - 440 km**

297.Askasibar Barrutia, Vicente
298.Astorkizaga Arriaga, Gaizka
299.Crespo Ortega, Jon
300.Etxeandia Meabe, Jose Miguel
301.Etxeberria Martin, Iñaki
302.Hernandez Sistiaga, Unai
303.Inziarte Gallardo, Juan Manuel
304.Lupiañez Mintegi, Gorka
305.Samaniego Curiel, Ekaitz
306.Ugarte Villar, Xabier
307.Arriaga Martinez, Josune
308.Linazasoro Lopez, Maitane

**VALENCIA II (Picassent) - 540 km**

309.Azkona Dominguez, Ibai
310.Belasko Armendariz, Alex
311.Esnal, Juan
312.Mujika Dorronsoro, Juan Mari
313.Saenz Olarra, Balbino
314.Zubiaga Bravo, Manex

**VALENCIA III (Picassent) - 540 km**

315.Azurmendi Peñagarikano, Mikel
316.Badiola Lasarte, Asier
317.Camacho Elizondo, Jose
318.Galarza Quirce, Luis Angel
319.Mardones Esteban, Asier
320.Merino Bilbao, Guillermo
321.Subijana Izquierdo, Juan Carlos
322.Balda Arruti, Josune
323.Barbarin Iurrebaso, Ainhoa
324.Pedrosa Barrenetxea, Maite
325.ArmendarizG.Langarika,Lierni + umea
326.Jauregi Amondarain,Oskarbi + umea
327.Mendizabal Mujika, Idoia + umea
328.Oña Ispizua, Josune + umea
329.Otaegi Tena, Nahikari + umea

**VALLADOLID (Villanubla) - 340 km**

330.Amaro Lopez, Gotzon
331.Antza Illarreta, Arkaitz
332.Fernandez Arratibel, Adur
333.Galarraga Arrona, Jose Antonio
334.Sebastian Iriarte, Alfontso
335.Zubiaga Lazkano, Xeber
336.Zabaleta Telleria, Miren

**VILLABONA (Asturias) - 440 km**

337.Bustindui Urresola, Alexander
338.Etxaniz Alkorta, Sebas
339.Intxauspe Bergara, Manuel
340.Lopez de Abetxuko Liki., Jose R.
341.Sadaba Merino, Javier

**VILLENA (Alacant II) - 720 km**

342.Aranburu Sudupe, Gotzon
343.Arregi Erostarbe, Joseba
344.Arrozpide Sarasola, Santiago
345.Berasategi Eskudero, Ismael
346.Goikoetxea Basabe, Arkaitz
347.Goitia Abadia, Oier
348.Iglesias Chouza, Juan Carlos
349.Tximeno Inza, Xabier
350.Vila Mitxelena, Fermin
351.Beloki Resa, Elena
352.Lizarraga Merino, Maria
353.Zuazo Aurrekoetxea, Maialen

**ZUERA (Zaragoza) - 300 km**

354.Agirre Lete,Juan Luis
355.Bilbao Beaskoetxea, Iñaki
356.Bilbao Gaubeka, Iñaki
357.Egibar Mitxelena, Mikel
358.Etxeberria Sagarzazu, Kepa
359.Garces Beitia, Iñaki
360.Garcia Razkin, Sergio
361.Legina Aurre, Kepa
362.Martinez de Osaba Arregi, Igor
363.Mujika Garmendia, Francisco
364.Uribarri Benito, Asier
365.Zabaleta Elosegi, Jose Jabier

## ETXEAN PRESO / PRISIÓN ATENUADA /CHEZ EUX EN RAISON DE LEUR GRAVE MALADIE: 6

1.Elkoro Unamuno, Jose Luis
2.Foruria Zubialde, Jose Ramon
3.Gil Cervera, Mikel
4.Gonzalez Peñalva, Belen
5.Ioldi Mujika, Milagros
6.Rego Vidal, Juan Jose

## FRANTZIAR ESTATUA / ESTADO FRANCÉS / ÉTAT FRANÇAISE: 97

**ALENÇON CONDE SUR SARTHE - 780 Km**

1.Iruretagoiena Lanz, Luis (358)
2.Salaberria Sansinea, Jon (359)

**ARLES - 750 km**

3.Lopez de Bergara Astola, Iñaki (238)

**BAPAUME - 1.080 km**

4.Aramendi Jaunarena, Alaitz (5 912)
5.Garmendia Marin, Oihana (5 913)

**BEZIERS - 523 km**

6.Arruabarrena Carlos, Jabi (5 363)
7.Mujika Andonegi, Ander (5 364)

**BOIS D'ARCY - 930 km**

8.Garitagoitia Salegi, Iurgi (77 213)
9.Iriondo Yarza, Aitzol (82 595)
10.Lariz Bustindui, Andoni (82 226)
11.Oa Pujol, Oier (80 599)

**BORDEAUX-GRADIGNAN - 330 km**

12.Agirregabiria del Barrio, Arkaitz (71 587)

**CLAIRVAUX - 1.050 km**

13.Bengoa Lpz de Armentia, Asier (10 718)
14.Eskisabel Urtuzaga, Peio (10 530)
15.Oiarzabal Txapartegi, Asier (10 420)

**FLEURY MEROGIS - 930 km**

16.Elizaran Aguilar, Aitor (376 473K D1)
17.Etxaburu Artetxe, Aitzol (399 918 D1)
18.Goieaskoetxea Arronategi, ibon (401 847 D2)
19.Goikoetxea Gabirondo, Andoni (403 192C D3)
20.Iturbide Otxoteko, Joseba (398 855 D3)
21.Mendinueta Mintegi, Iurgi (382 026 W D2)
22.Oses Carrasco, Jose Javier (396 380 Y D3)
23.Suberbiola Zumalde, Igor (366 075 H D1)
24.Bernadó Bonada, Marina (405 569 M)
25.Eizagirre Zubiaurre, Ekhiñe (404 834 N)
26.Ozaeta Mendikute, Ainhoa (366 074 G 6E)
27.Plaza Fernandez, Itziar (374 574 W)

**FRESNES - 930 km**

28.Curto Lopez, Saul (965 476)
29.Errazkin Telleria, Ugaitz (963 651)
30.Ibarguren Sarasola, Oier (967 500)
31.Matxain Beraza, Alberto (945 144 D1)
32.Beyrie, Lorentxa (954 917)
33.Moreno Martinez, Itziar (969 134)

**LANNEMEZAN - 330 km**

34.Agerre, Didier (1 993)
35.Haranburu, Frederic (2 547)
36.Esparza Luri, Iñaki (2 199)
37.Fernandez Iradi, Ibon (2 226)
38.Lete Alberdi, Jose Ramon (2 196)
39.Segurola Kerejeta, Joseba (2 387)

**LIANCOURT - 1.000 km**

40.Etxeberria Oiarbide, Jon (8 739)
41.Oroz Torrea, Mikel (9 861)
42.Saez de Jauregi Ortigosa, Iban (7 188)

**LYON CORBAS -900 km**

43.Aranburu Sagarminaga, Xabier (10 954)
44.Labaka Larrea, Urko (5 213)
45.Zobaran Arriola, Alejandro (5 216)
46.Lozano Miranda, Jone (5 331)

**MEAUX-CHAUCONIN-NEUFMONTIERS - 970 km**

47.Arkauz Zubillaga, Kepa (14 299)
48.Gomez Mielgo, Oier (13 238)

**MONT DE MARSAN - 234 km**

49.Akarregi Casas, Alexander (5 183)
50.Ardanaz Armendariz, Oier (5 090)

**MOULINS-YZEURE - 800 km**

51.Abaunza Martinez, Javier (14 610)
52.Martitegi Lizaso, Jurdan (14 736)

**MURET CD - 430 km**

53.Parot Navarro, Ion (9 680)
54.Zeberio Aierbe, Jose (10 942)

**MURET SEYSSES - 430 km**

55.Mujika Andonegi, Julen (22 163)
56.Rivero Campo, Ruben (22 981)

**NANTERRE - 930**

57.Ayestaran Legorburu, J Lorenzo (33 306)
58.Barandalla Goñi, Oihan (38 872)
59.Borrero Toribio, Asier (33 719)

**OSNY - 970 km**

60.Etxeberria Aierdi, Urtzi (53 117)
61.Fernandez Aspurz, Joseba (52 295)
62.Gutierrez Elordui, Borja (52 293)
63.Mendizabal Elezkano, Julen (53 662)
64.Sancho Marco, Iñigo (52 294)

**POITIERS VIVONNE - 550 km**

65.Aduna Vallinas, Raul (4 136)
66.Urbieta Alkorta, Josu (4 134)
67.Varea Etxebarria, Montxo Arkaitz (4 135)
68.Aranalde Ijurko, Maite (851)
69.Lesaka Arguelles, Izaskun (2 817)

**POISSY - 950 km**

70.Garate Galarza, Enrique (11 807)
71.Otxoantesana Badiola, Jon Aingeru (11 765)
72.Vicario Setien, Gregorio (11 498)

**REAU SUD FRANCILIEN - 930 km**

73.Albisu Iriarte, Mikel ( 3 002)
74.Karrera Sarobe, Mikel (3 358)
75.Lopez de Lacalle Gauna, Alberto (2 090)
76.Chivite Berango, Mercedes (3 997)
77.Iparragirre Genetxea, Marixol (3 001)

**RENNES - 800 km**

78.Areitio Azpiri, Alaitz (7 992)
79.Gimon, Lorentxa (7 228)
80.Lopez Resina, Maria Dolores (7 075)

**ROANNE - 850 km**

881.Sanchez Iturregi, Saioa (2 007)
82.Zaldua Iriberri, Miren Itxaso (930)

**SAINT MARTIN DE RE - 550 km**

83.Esnal, Jakes (14 207)
84.Martinez Bergara, Fermin (14 461)
85.Merodio Larraona, Zigor (14 716)
86.Rubenach Roiz, Jon (14 494)

**SAINT MAUR - 680 km**

87.Bienzobas Arretxe, Jon (4 637)
88.Elizegi Erbiti, Iñigo ( 4 403)
89.Garro Perez, Zigor (4 676)
90.Ilundain Iriarte, Alberto (4 262)
91.Maiza Artola, Juan Cruz (4 635)
92.Palacios Aldai, Gorka (4 740)

**TARASCON - 750 km**

93.Ezeiza Aierra, Asier (11 428)
94.Errasti Goiti, Zuhaitz (11 430)
95.Sirvent Auzmendi, Ekaitz (11 431)

**VILLEPINTE - 950 km**

96.Gurrutxaga Gogorza, Oroitz (33 450)
97. Uriarte Lopez de Vicuña, Igor (33 449)

## INGALATERRA: ETXEAN PRESO / ARRESTO DOMICILIARIO

Troitiño Arranz, Antton

## PORTUGAL: MONSANTO - LISBOA

Zengotitabengoa Fernandez, Andoni

## ALEMANIA:

Elgorriaga Kunze, Tomas

## gaixotasun larriak dituzten presoak

**Jesus Mª MARTIN HERNANDO** (Basauri) : Zaballa. 1960. urtean jaioa. 2002an atxilotua. Nahasmen eskizo-afektiboa delirio osagarriarekin. **BAKARTUA**

**Josetxo ARIZKUREN RUIZ** (Iruñea) : A Lama (A Coruña). 1958an jaioa. 1999an atxilotua. Kardiopatia iskemiko larria. Kateterismoa: Stent hodi batean.

**Jose Ramon LOPEZ DE ABETXUKO LIKINIANO** (Gasteiz): Villabona (Asturias). 1949an jaioa. 1989an atxilotua. Bradikardia sintomatikoa. Fibrilazio aurikularra, Prostatako adenoma.

**Inmaculada BERRIOZABAL BERNAS** (Zegama/Elorrio): A Lama (Pontevedra). 1951ean jaioa. 2009an atxilotua. Psoriasi artropatia, Diabetesa (DM-II), Diabetes oina, hipertentsioa, azkazaletako psoriasia, Asma bronkiala, belaunetako protesia.

**Gari ARRUARTE SANTA CRUZ** (Hernani): Almeria. 1980an jaioa. 2003an atxilotua. Espondilitisa.

**Iñaki ETXEBERRIA MARTIN** (Iruñea). Topas (Salamanca). 1964ean jaioa. 1996an atxilotua. Eboluzio luzeko Miopia Magnoa. Eskuineko begiko erretina hemorragia, Ikusmen zorroztasunaren galera, ezkerreko begiko afaquia.

**Aitzol GOGORZA OTAEGI** (Orereta) - Basauri. 1975ean jaioa. 1999an atxilotua. Obsesio Konpultsio Nahastea. **BAKARTUA**

**Jose Miguel ETXEANDIA MEABE** (Larrabetzu) - Topas (Salamanca).1960an jaioa. 2003an atxilotua. Nahaste obsesibo konpultsiboa, Hepatitis C.

**Ibon FERNANDEZ IRADI** (Hernani) – Lannemezan (Frantziar estatua). 1971ean jaioa. 2003an atxilotua. Esklerosi anizkoitza.

**Ibon IPARRAGIRRE BURGOA** (Ondarroa) - Navalcarnero. 1973an jaioa. 2010ean atxilotua. IHESa C estadioan, Orbana burmuineko ezker lobuloan, ikusmen galera eta beste funtzio kognitibo batzuen kaltea ekartzen dituena. **BAKARTUA.**

